## Sarrera

634 presok osatzen dute egun Euskal Preso Politikoen Kolektiboa. 634 preso horiek 85 espetxetan sakabanatuta daude. Preso guzti hauetatik 8 soilik daude Euskal Herriko espetxetan, eta hauek ere 4 espetxetan sakabanatuta daude. Preso kopururik handiena Espainiako espetxeetan aurkitzen da, 473 preso politiko daude 47 espetxetan sakabanatuta. Frantziako espetxeetan 137 preso aurkitzen dira 30 espetxetan sakabanatuta. Preso bana daude Portugalen, Ipar Irlandan, Ingalaterran eta Mexikon. Eta honez gain, 11 preso daude etxean eta preso bat Frantziako Autun dago konfinatua.

Azken hilabete hau bereziki latza izan da sakabanaketa politikaren ondorioak jasan dituzten senideentzat. Apirileko azken asteburuan bederatzi senidek eta lagunek izan zituzten hiru istripu, eta laugarren bat ere gertatzeko zorian egon zen, baina zorionez ez zen ondorio larririk egon. Urteko lehen bost hilabete hauetan jada zazpi istripu izan dira. Sakabanaketa politikak senideon eta lagunon aurkako eraso zuzenak dira, izan ere, asteburuiro gure bizitzak arriskuan jartzera behartzen gaituzte, milaka kilometro errepidean eginez. Horregatik ezinbestekoa da sakabanaketa politika berehala amaitzea inongo baldintza eta xantaiarik gabe.

Bestalde, osasungintzaren arloan ere hilabete nahasia izan da honakoa. Hiru euskal preso politiko ospitaleratuak izan dira. Batetik, espetxeratze arinduan dagoen Ibon Iparragirre ondarrutarra ospitaleratu zuten epilepsia krisi baten ondorioz. Bestetik, Txema Olabarrieta bilbotarra ere ospitaleratua izan zen peritonitis baten ondorioz. Eta azkenik, Jose Ramon Martinez de Lafuente ere ospitalean egon da erretina higitze (desprendimiento de retina) bat dela eta.

Zoritxarrez hilabete honetan ere gure senide eta lagunen egoerak ez du hobera egin. Euren oinarri-oinarrizko eskubideak behin eta berriz urratuak izaten dira espetxeetan, eta jasaten dituzten neurrigabeko zigorrak, erasoak, jarrera bortitzak eta baldintza gogorrak oso ohikoak dira. Aipatu egoera hauetako bat da isolamendu edo bakartzearena. Euskal preso politikoen kasuan ohikoa bilakatu da bata besteengandik banatzea espetxe nahiz modulu desberdinetan. Eta zenbait kasutan isolamenduan ez egon arren presoak bakarrik daude, hau da, beste euskal preso politikorik gabe egoten dira. Hau gertatzen zaie une honetan hamaika euskal preso politikori, eta horien artean dago Txus Martin gaixo larria; bere gaixotasunagatik konfiantzazko norbaitekin egon beharko lukeen arren, kiderik gabe baitago. Egoera berean aurkitzen da Naia Lacroix senpertarra ere, eta hau salatzeko zazpi eguneko gose greba bat egin zuen, Zuhaitz Errastirekin batera. Biak Gradignango espetxean aurkitzen dira. Gose greba utzi zuten Naia Lacroixi beste espetxe batera mugituko zutela esan ziotelako. Beraiekin salaketarekin bat egiteko Fresnes, Villepinte, La Sante eta Lannemezan espetxeetan ere baraualdiak egin zituzten. Presoek euren eskubideak lortzeko muturreko egoera hauetan jarri behar izatea lotsagarria da, eta erantzuleei konpromisoak hartzeko eta egoera hauek aldatzeko exijitzen diegu.

Gure senide eta lagunen eskubideak errespetatuak izan behar dute, gaixotasun larri eta sendaezinak dituztenak aske egon behar dute, bizi osorako zigorrarekin amaitu behar dute eta zigorraren 2/3 eta 3/4 beteta dutenak kalean behar dute. Ez dugu ez baldintzari ezta xantaiarik ere onartzen, hau horrela izan behar du eta berehala izan behar du, gainera.



# 1. ESPETXEA ETA OSASUNA

Gure senide eta lagunek osatzen duten Euskal Preso Politikoen Kolektiboari espetxe politika berezitua aplikatzen zaio, eta horrek ondorio argiak ditu euren osasunean. Espetxeko arautegiak, espetxealdi luzeek, elikadurak, bakartze edo isolamenduaren aplikazio zorrotzak, osasun asistentzia desegokiak edota espetxeko egoerak presoek hainbat gaixotasun mota garatzea dakar. Zehazki, euskal preso politikoen %21,5 gaixorik daude, eta hamalau dira gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten presoak.

Maiatzean hiru euskal preso ospitaleratuak egon behar izan dute. Batetik, maiatzaren 6an espetxeratze arinduan aurkitzen den Ibon Iparragirre Burgoa preso ondarrutarra Basurtuko ospitaleko ZIUn ospitaleratua izan zen, epilepsia krisi baten ondorioz. Ospitalean medikazioaren bidez bere egoera kontrolatzea lortu zuten. Maiatzaren 8an jaso zuen alta ospitalean. Ibon Iparragirre GIB birusaren portadorea da, eta bere egoeraren larritasunagatik Basauriko espetxera ekarri zuten 2011ko irailean. Urrian ospitalean oso egoera larrian egon ondoren, etxera itzuli ahal izan zuen, bere zigorra espetxeratze arinduan betetzeko.

Bestetik, Txema Olabarrieta Bilboko preso maiatzaren 16an ospitaleratu zuten peritonitis baten ondorioz. Caceres II-ko espetxean aurkitzen den presoa sabeleko min handia zuela eta minari ezin eutsi zegoela, espetxetik ospitalera eraman zuten. Bertan peritonitis bat zuela eta ebakuntza bat egin zioten. Txema Olabarrieta ongi dago orain, eta senideekin egoteko aukera ere izan zuen ospitaleratuta egon zen aste horretan zehar.

Azkenik, Logroñoko espetxean aurkitzen den Jose Ramon Martinez de Lafuente Gasteizko presoa ospitalera eraman zuten maiatzaren 18an eta bertan ebakuntza bat egin zioten erretinaren higitze (desprendimiento de retina) bat dela eta. Ebakuntza ondo atera zen, eta senideekin egoteko aukera izan zuen. Maiatzaren 19an eraman zuten berriz ere espetxera. Espetxera itzulitakoan hamabost egunetan buruz behera egon behar izan du begiak zaintzeko. Jose Ramon Martinez de Lafuentek 27 urte daramatza espetxean, eta 197/2006 doktrina aplikatua du.

Bestalde, zoritxarrez gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten presoen egoera ez da aldatu. Are gehiago, asistentzia mediku egoki bat jasotzeko zailtasunak izatez dituzte, eta izugarrizko jazarpena jasaten dute. Horixe gertatu zaio Gotzone Lopez de Luzuriaga preso gaixo larriari. Gotzone Martuteneko espetxean dago, eta maiatzaren 15ean Ertzaintzak Donostiako hospitalera eraman zuen mamografia bat egitera. Kontsultaren unean, ertzainek kontsultaren barruan egon ez ezik, medikuak jarritako kortinatxoaren bestaldean egon nahi izan zuten, hau da, presoaren aurre aurrean, guztia ikusten. Gotzone Lopez de Luzuriagak ez zuen baldintza hori onartu, eta mamografia egin gabe geratu behar izan zuen. Hau salatzeko Arartekoari kexa bat aurkeztu diote Gotzoneren abokatuek, jarrera aldatu eta probak era duin eta normalizatu batean egin ahal izateko.

Gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten presoen muturreko larritasuna dela eta, inongo baldintzarik gabe kalean egon beharko lukete. Beharrezkoa da espetxean bermatzen ez den asistentzia mediku egokia jasotzeko. Kasu hauetan, gainera, bere inguru afektiboaren hurbiltasuna ere beharrezkoa da jarraipena zein tratamendua bermatzeko.

## Gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten 14 preso politikoak:

**Iñaki ERRO ZAZU (Iruñea)** - ESPETXEA: Almeria. 1960an jaioa. 1987an atxilotua. Miokardioko Bihotzeko Akutua (kateterismoa: stent hodi batean), eskuineko aldakako protesia, belauneko artroskopia, Protusio diskala, Hiperkolesterolemia, Koxartrosia.

**JosetxoARIZKUREN RUIZ (Iruñea)** - ESPETXEA: A Lama (A Coruña). 1958an jaioa. 1999an atxilotua. Kardiopatia iskemiko larria. Kateterismoa:Stent hodi batean.

**Isidro GARALDE BEDIALAUNETA (Ondarroa)** - ESPETXEA: Puerto I (Cádiz). 1951ean jaioa. 1985ean atxilotua. Miokardioko Bihotzeko Akutua-Kardiopatia iskemikoa- (SCASEST erakoa) Prostatako hiperplasia benignoa, Kataratak.

**Jose Ramon LOPEZ DE ABETXUKO LIKINIANO (Gasteiz)** - ESPETXEA: Villabona (Asturias). 1949an jaioa. 1989an atxilotua. Bradikardia sintomatikoa. Fibrilazio aurikularra, Prostatako adenoma.

**Josu URIBETXEBERRIA BOLINAGA (Arrasate)** - ESPETXEA: Mansilla (León). 1955ean jaioa. 1997an atxilotua. Giltzurruneko minbizia.

**Gotzone LOPEZ DE LUZURIAGA FERNANDEZ (Agurain)** - ESPETXEA: Martutene. 1959an jaioa. 1989an atxilotua. Bularreko minbizia.

**Jose Angel BIGURI CAMINO (Menagarai)** - ESPETXEA: Martutene. 1955ean jaioa. 1989an atxilotua. Prostatako adenokartzinoma (minbizia).

**Inmaculada BERRIOZABAL BERNAS (Zegama/Elorrio**) - ESPETXEA: A Lama (Pontevedra). 1951ean jaioa. 2009an atxilotua. Psoriasi artropatia, Diabetesa (DM-II), Diabetes oina, hipertentsioa, azkazaletako psoriasia, Asma bronkiala, belaunetako protesia.

**Gari ARRUARTE SANTA CRUZ (Hernani)** - ESPETXEA: Almeria. 1980an jaioa. 2003an atxilotua. Espondilitis ankilosantea (Espondiloartropatia HLA-B27 +). Artralgiak beheko gorpuz adarretan. Errotula Kondropatia. Uveitis 2 episodio. Aldebiko sakroilitisa.)

**Iñaki ETXEBERRIA MARTIN (Iruñea)** - ESPETXEA: Topas (Salamanca). 1964ean jaioa. 1996an atxilotua. Eboluzio luzeko Miopia Magnoa. Eskuineko begiko erretina hemorragia, Ikusmen zorroztasunaren galera, ezkerreko begiko afaquia.

**Jesus Mª MENDINUETA FLORES (Arbizu)** - ESPETXEA: Zuera (Zaragoza). 1968an jaioa. 1991ean atxilotua. Gaixotasun erreumatikoa, afektazio sistemikoarekin (HLA-B27 +: Espondilitis ankilopoetikoa). Hori dela eta, aurrealdeko uveitisa . Bi disko-eten (lepoaldean eta gerrialdean, lepoko mina eta ziatikarekin) . Sinupatia aldi errepikariak.

**Aitzol GOGORZA OTAEGI (Orereta)** - ESPETXEA: Basauri. 1975ean jaioa. 1999an atxilotua. Nahaste obsesibo konpultsiboa. Medikatua.

**Jose Miguel ETXEANDIA MEABE (Larrabetzu)** - ESPETXEA: Topas (Salamanca). 1960an jaioa. 2003an atxilotua. Nahaste obsesibo konpultsiboa, Hepatitis C.



# BIZI OSORAKO ESPETXE ZIGORRA

Bizi osorako espetxe zigorra presoaren bizitza osoa irauten duen zigorra da; hala ere, 20 urtetik gorako zigorrak izendatzeko ere erabiltzen da, iraupen honetako zigorrek ondorio fisiko eta sikologiko latzak eragiten dituztelako, eta hortaz, giza eskubideen ikuspegitik onartezinak direlako. Euskal preso politikoen kasuan zifra nahiko kezkagarria da 20 urtetik gora espetxean daramaten presoen kopurua. Espainiako eta Frantziako gobernuek trikimailu eta baldintzez betetako lege bat aplikatzen diete gure senide eta lagunei, eta honela bizi osorako espetxe zigorrera kondenatzen dituzte.

Gainera, Frantzian bizi osorako espetxealdia legeztatua dago. Frantzian 15 urte ("sureté" deitzen duten kontzeptuaren arabera 17 eta baita 21 urteko espetxealdia ere erabiltzen dute) pasa arte ezin da baldintzapeko askatasunik eskatu. Hala ere, euskal preso politikoen kasuan kaleratzeko eskaerak ukatuak izaten dira, eta epaileek baldintzapeko askatasunean kaleratzeko zehazten duten denbora geroz eta luzeagoa da. Bizi oso--osoa espetxean igaro dezaketelarik. Gaur egun badaude 22 urte espetxean daramatzaten euskal preso politikoak: Ion Kepa Parot, Jakes Esnal eta Frederic Haranburu.

Espainian, 197/2006 doktrina aplikatzen diete gure senide eta lagunei espetxealdiak luzatzeko. Gainera, gehienetan irteera dataren egunean bertan 197/2006 doktrina aplikatu zaiela jakinarazten die presoei. Honek presoengan eta senideongan duen ondorio sikologikoa benetan latza izaten delarik. Azken hilabete honetan beste bost euskal presori luzatu diete kondena, 197/2006 doktrina aplikatuz: Asier Ormazabal Lizeaga (Hernani), Iñaki Zugadi Garcia (Barakaldo), Juan Jose Zubieta Zubeldia (Lekunberri), Josune Onaindia Susaeta (Barakaldo), Alberto Plazaola Andoaga (Oñati).

Hala ere, zorionez 197/2006 doktrina aplikatuta duen preso bat behintzat aske geratu da. Peio Etxeberria soraluzearra aske geratu da Auzitegi Konstituzionalak 197/2006 doktrinaren inguruan Etxeberriak jarritako helegitea onartu eta gero. Peio Etxeberria Lete 1989an espetxeratua izan zen. Irteera data 2006ko irailaren 10erako finkatuta bazuen ere, 197/2006 doktrina aplikatu zioten, eta zigorra 2019ra arte luzatu zioten.

Auzitegi Konstituzionalak martxoaren 29an jakinarazi zuen 197/2006 doktrina aplikatu zieten 47 euskal presoren babes helegiteak aztertu eta gero hartutako erabakia. Orduan 3 helegite onartu zituela, eta 19 atzera bota zituela jakinarazi zuen. Beste hiru helegite ez zituela aztertuko eta beste 22 helegite tramitera onartu zituela ere adierazi zuen. Orain beste helegite baten inguruan hartutako erabakiaren berri eman dute, eta hau onartu duenez Peio Etxeberria kalean da jada.

Martxoan onartu zituzten hiru helegiteak honako preso hauenak izan ziren: Jose Ignacio Gaztañaga Bidaurreta, Juan Mari Igarataundi Peñagarikano eta Jose Mari Perez Txuri.

Jada 83 euskal preso politikori aplikatu diete 197/2006 doktrina; eta hauetatik 66 presok espetxean jarraitzen dute bahituta zigorra betetzen. Jarraian 197/2006 doktrina aplikatuta duten presoen zerrenda:

## ESPETXEAN DOKTRINAREN ZIGORRA BETETZEN: 55

**1. OSCAR ABAD PALACIOS (Basauri. Topas):** 1991ean espetxeratua. Irteera data 2010eko abenduaren 31rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2021era arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

**2. JON AGINAGALDE URRESTARAZU (Donostia. Granada):** 1984ean espetxeratua. Irteera data 2010eko uztailaren 4rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2014ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu du.

**3. IÑIGO AKAITURRI IRAZABAL (Zornotza. A Lama):** 1991ean espetxeratua. Irteera data 2010ko apirilaren 15erako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2012ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu du.

**4. JUAN CARLOS ARRUTI AIZPITARTE (Azpeitia. Cordoba):** 1989an espetxeratua. Irteera data 2009ko martxoaren 5erako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2019ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

**5. JOSEBA ARTOLA IBARRETXE (Bilbo. Daroca):** 1986an espetxeratua. Irteera data 2006ko maiatzaren 18rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2016ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

**6. LUIS MARI AZKARGORTA BELATEGI (Bergara. Zuera):** 1988an espetxeratua. Irteera data 2007ko urriaren 8rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2018ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

**7. SANTOS BERGANZA ZENDEGI (Amurrio. Villena):** 1989an espetxeratua. Irteera data 2011ko ekainaren 15erako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2019ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

**8. JOSE ANGEL BIGURI CAMINO (Menagarai. Martutene):** 1989an espetxeratua. Irteera data 2010eko ekainaren 9rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2019ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu du.

**9. JESUS BOLLADA ALVAREZ (Barakaldo. Albocasser):** 1987an espetxeratua. Irteera data 2006ko maiatzaren 20rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2017ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

**10. FERNANDO DEL OLMO VEGA (Bilbo. Almeria):** 1991ean espetxeratua. Irteera data 2012ko otsailerako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2020ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

**11. INES DEL RIO PRADA (Tafalla. Curtis):** 1987an espetxeratua. Irteera data 2008ko uztailaren 5erako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2017ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu du.

**12. JUAN IGNACIO DELGADO GOÑI (Legazpi. Topas):** 1991ean espetxeratua. Irteera data 2012ko otsailaren 19rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2012ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

**13. JOSU DIAZ DE HEREDIA RUIZ DE ARBULU (Gasteiz. Topas):** 1986ean espetxeratua. Irteera data 2009ko urriaren 15erako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2016ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu du.

**14. FERNANDO DIEZ TORRE (Bilbo. Villabona):** 1992an espetxeratua. Irteera data 2011ko maiatzaren 30erako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2022ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

**15. IÑAKI ERRO ZAZU (Iruñea. Almeria):** 1987an espetxeratua. Irteera data 2010eko maiatzaren 16rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2017ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu du.

**16. JOSE ETXEBERRIA PASCUAL (Donostia. Daroca):** 1991ean espetxeratua. Irteera data 2010eko martxoaren 26rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2021ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

**17. ELIAS FERNANDEZ CASTAÑARES (Bermeo. Villabona):** 1986an espetxeratua. Irteera data 2011ko maiatzaren 27rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2016ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

**18. IÑAKI FERNANDEZ DE LARRINOA PEREZ DE LUKO (Gasteiz. Puerto I):** 1989an espetxeratua. Irteera data 2008ko urrirako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2019ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu du.

**19. NICOLAS FRANCISCO RODRIGUEZ (Lasarte. Herrera de la Mancha):** 1987an espetxeratua. Irteera data 2009ko maiatzaren 26rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2017ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu du.

**20. JUAN MARI GABIRONDO AGOTE (Itziar. A Lama):** 1986an espetxeratua. Irteera data 2007ko abenduaren 1erako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2016ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu du.

**21. ISIDRO GARALDE BEDIALAUNETA (Ondarroa. Puerto I):** 1985ean Frantzian espetxeratua, 7 urteko zigorrarekin. 1990an aske utzi zuten eta, urte berean, espetxeratua eta espetxeratua berriro Frantzian. 1992ean Espainiara estraditatua. 2010ko otsailaren 2rako zuen irteera data, baina 2009ko abenduan, Entzutegi Nazional espainiarreko fiskaltzak 197/2006 doktrina aplikatzea eskatzen du. Irteera data 2020ean utzi dute. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ez du tramitera onartu.

**22. XABIER GOLDARAZ ALDAIA (Mugiro. Zuera):** 1992an espetxeratua. Irteera data 2011ko irailaren 17rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2022ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

**23. PATXI GOMEZ LOPEZ (Ortuella. Basauri):** 1989an espetxeratua: Auzitegi Gorenako 197/2006 sententziaren irizpidea aplikatuz, Patxi Gomez 2018rarte ez askatzea erabaki du Espainiako Auzitegi Nazionalak. 2006ko ekainaren 14ean askatu behar zuten Patxi, eta kaleratze data 2018ko irailaren 19ra atzeratu diote, 30 urteko zigorra osorik bete arte. 2009-04-29an kaleratu zuten, kondena 20 urtetan ezarriz. 2009ko abenduan, ebazpen horren aurka, Auzitegi Gorenak 30 urtetan ezarri zion zigorra, beste 10 urtez kondena luzatuz. 2012ko otsailaren 9an berriro atxilotzen dute geratzen zaizkion urteak betetzeko. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

**24. RAUL IBAÑEZ DIEZ (Basauri. Dueñas):** 1991ean espetxeratua. Irteera data 2010eko urriaren 8rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2021ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu du.

**25. JUAN JOSE LEGORBURU GEREDIAGA (Zornotza. Castelló II):** 1986ean espetxeratua. Irteera data 2009ko apirilaren 2rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2016ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

**26. GOTZONE LOPEZ DE LUZURIAGA FERNANDEZ (Agurain. Martutene):** 1989an espetxeratua. Irteera data 2010eko abuztuaren 11rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2019ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu du.

**27. ANTXON LOPEZ RUIZ (Elorrio. Puerto I):** 1987an espetxeratua. Irteera data 2006ko uztailaren 24rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2017ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

**28. FRANCISCO LUJANBIO GALDEANO (Hernani. Herrera de la Mancha):** 1984ean espetxeratua. Irteera data 2008ko otsailaren 17rako bazuen ere, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2014ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu du.

**29. JOSE RAMON MARTINEZ DE LA FUENTE INTXAURREGI (Gasteiz. Logroño):** 1985an espetxeratua. Irteera data 2009ko urtarrilaren 1erako bazuen ere, 197/06 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2020ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu du.

**30. JABI MARTINEZ IZAGIRRE (Usansolo. Jaen):** 1992ean espetxeratua. Irteera data 2010eko irailaren 22rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. zigorra 2022ko Maiatzaren 5ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

**31. ITZIAR MARTINEZ SUSTATXA (Galdakao. Topas):** 1991ean espetxeratua. Irteera data 2009ko ekainaren 4erako zuen, baina 197/2006 doktrina aplikatu zioten. Zigorra 2021ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu du.

**32. JESUS MARI MENDINUETA FLORES (Arbizu. Zuera):** 1991ean espetxeratua. Irteera data 2011ko Maiatzaren 4rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2021ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

**33. INMACULADA NOBLE GOIKOETXEA (Hernani. Algeciras):** 1987an espetxeratua. Irteera data 2008ko azaroaren 8rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2017ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

**34. PEIO ODRIOZOLA AGIRRE (Tolosa. Zuera):** 1988ean espetxeratua. Irteera data 2008-07-02an zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2018ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

**35. IÑAKI OROTEGI OTXANDORENA (Lasarte. Zuera):** 1986ean espetxeratua. Irteera data 2008ko abenduak 17an zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2016ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu du.

**36. IMMA PACHO MARTIN (Bilbo. Malaga):** 1991ean espetxeratua. irteera data 2008-03-11rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2021ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu du.

**37. JUAN MANUEL PIRIZ LOPEZ (Portugalete. Algeciras):** 1984an espetxeratua. Irteera data 2009ko Martxoan zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2014ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

**38. IÑAKI PUJANA ALBERDI (Otxandio. Villena):** 1987an espetxeratua. Irteera 2009ko Otsailaren 23rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2021ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu du.

**39. KEPA REZABAL ZURUTUZA (Lasarte-Monterroso):** 1987an espetxeratua. Irteera 2006ko abenduren 30erako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2016ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

**40. MAITANE SAGASTUME ARRIETA (Donostia. Curtis):** 1991an espetxeratua. Irteera 2009ko Uztailaren 26rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2021ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu du.

**41. JOKIN SANCHO BIURRUN (Iruñea. Zuera):** 1989an espetxeratua. Irteera 2009ko Abenduaren 8rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2019ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

**42. KEPA SOLANA ARRONDO (Legazpi. Bonxe):** 1991an espetxeratua. Irteera 2009ko Urriaren 10ean zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2021ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura tramitera onartu du.

**43. TXOMIN TROITIÑO ARRANZ (Donostia. Curtis):** 1987an espetxeratua. Irteera 2006ko maiatzaren 5erako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2017ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

**44. MITXEL TURRIENTES RAMIREZ (Lasarte. Herrera de la Mancha):** 1986ean espetxeratua. Irteera 2009ko apirilaren 10rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2016ra arte luzatu diote.

**45. JOKIN URAIN LARRAÑAGA (Mendaro. Herrera de la Mancha):** 1986ean espetxeratua. Irteera 2009ko abuztuaren 29rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2016 ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

**46. IÑAKI URDIAIN ZIRIZA (Barañain. Valencia III):** 1989ean espetxeratua. Irteera 2009ko Urriaren 9an zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2019ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

**47. JON ANDER URKIZU ORMAZABAL (Pasai San Pedro-Teruel):** 1986an espetxeratua: irteera 2007ko uztailaren 22rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2016ra arte luzatu diote. Epaitegi Konstituzionalak ez du oraindik Doktrinaren etenduraz ebatzi.

**48. MARITXU UZKUDUN ETXENAGUSIA (Errezil. Granada):** 1991ean espetxeratua. Irteera 2009ko abuztuaren 27rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2021ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

**49. JOSE FELIX ZABARTE JAINAGA (Elorrio. Puerto III):** 1985an espetxeratua. Irteera 2008ko apirilaren 11rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2015ra arte luzatu diote. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

**50. MARIO ARTOLA MENDIBE (Donostia. Daroca):** 1992an espetxeratua. Irteera data 2012ko apirilaren 17rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2022ra arte luzatu diote.

**51. GONZALO RODRIGUEZ CORDERO (Ezkio-Itxaso. Herrera de la Mancha):** 1993ean espetxeratua. Irteera data 2013ko uztailaren 11rako du, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2023ra arte luzatu diote.

**52. IÑAKI ZUGADI GARCIA (Barakaldo. Murcia II):** 1992an espetxeratua. Irteera data 2012ko apirilaren 30erako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2022ra arte luzatu diote.

**53. JUAN JOSE ZUBIETA ZUBELDIA (Lekunberri. Monterroso):** 1991ean espetxeratua. Irteera data 2012ko apirilaren 30erako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2021ra arte luzatu diote.

**54. JOSUNE ONAINDIA SUSAETA (Barakaldo. Murcia II):** 1992an espetxeratua. Irteera data 2012ko ekainaren 9rako zuen, baina urte bereko maiatzean 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2022ra arte luzatu diote.

**55. ALBERTO PLAZAOLA ANDOAGA (Oñati. Curtis):** 1990ean espetxeratua. Irteera data 2016ko azaroaren 26rako zuen, baina 2012an 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2026ra arte luzatu diote.

## DOKTRINA EZARRITA irteera finkatu aurretik: 11

**1. JOSU AMANTES ARNAIZ (Bilbo. Bonxe):** 1992an espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. 2012an Epaitegi Konstituzionalak tramitera onartu zuen.

**2. IÑAKI ARAKAMA MENDIA (Gasteiz. Sevilla II):** 1997an espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten.

**3. SANTIAGO ARROZPIDE SARASOLA (Lasarte. Zuera):** 1987an espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten.

**4. JOSE MARIA BERISTAIN URBIETA (Itziar. Puerto III):** 1989an espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten.

**5. OSKAR CADENAS LORENTE (Donostia. Murcia II):** 1996an espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten.

**6. JORGE GONZALEZ ENDEMAÑO (Portugalete. Mansilla):** 1995ean espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

**7. MANU GONZALEZ RODRIGUEZ (Laudio. Sevilla II):** 1989an espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten.

**8. UNAI PAROT NAVARRO (Baiona. Puerto III):** 1990ean espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten.

**9. LURDES TXURRUKA MADINABEITIA (Soraluze. Huelva):** 1994ean espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

**10. JOSE JAVIER ZABALETA ELOSEGI (Hernani. Zuera):** 1990ean espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. 2012an Epaitegi Konstituzionalak Doktrinaren etendura ukatu zion.

**11. ASIER ORMAZABAL LIZEAGA (Hernani. Teruel):** 1997ean espetxeratua. Irteera data finkatua izan aurretik, 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Irteera datarik ez diote finkatu.

## KALEAN (Doktrina ezarrita baina Doktrinaren zigorra bete gabe): 4

**1. ANDER MITXELENA (Oiartzun):** 2001tik baldintzapeko askatasunean dago. 2008ko Otsailaren 25ean bukatzen zuten zigorra, baina 197/2006 Doktrina aplikatu zioten 2014 arte.

**2. BAUTISTA BARANDALLA IRIARTE (Iruñea):** 1990ean espetxeratua. Irteera data 2009-06-30rako zuen, baina 197/2006 Doktrina ezarri zioten. Zigorra 2020ra arte luzatu diote. Bere gaixotasuna dela eta 2009an kaleratu zuten, kontrol neurriekin etxean. 2012an Epaitegi Konstituzionalak tramitera onartu zuen.

**3. INAXIO MENDIBURU ITURRAIN (Oiartzun):** 1984ean espetxeratua. 2014ko ekainera arte luzatu zioten zigorra. 2009Ko maiatzean 197/2006 Doktrina aplikatu zioten. 2012an Epaitegi Konstituzionalak tramitera onartu zuen.

